# ULERMENA TEST BIDEZ 9

**1. Gure herriak herri artean bere tokia behar duen bezala, gure hizkuntzak ere berea aurkitu behar du hizkuntzen artean.** Bestela esanda:

a) Gure herriak ez ezik gure hizkuntzak ere bere tokia behar du.

b) Gure herriak ez bezala gure hizkuntzak bere tokia aurkitu behar du hizkuntzen artean.

c) Herriak bere tokia behar du herrien artean, ez, haatik, gure hizkuntzak.

d) Gure hizkuntzak nahiz herriak galdutako tokia aurkitu dute.

**2. Euskara baturako, soziolinguistikazko arrazoien kariaz, hegoaldeko aldaera izan daiteke hobestekoa.** Hortaz:

a) Soziolinguistikazko arrazoiak direla eta, euskara baturako hegoaldeko aldaera baztertu behar da.

b) Euskara baturako, arrazoiak arrazoi, hegoaldeko aldaera onartuko dute.

c) Soziolinguistikazko arrazoiak direla eta, euskara baturako hegoaldeko aldaera hobetsi beharko litzateke.

d) Euskara baturako arrazoiak arrazoi, hegoaldeko aldaera hobetsi behar da.

**3. Gertatuak gertatu, estimu egin zuten beren lanaz. Izan ere, urte askoko emaitza zen.** Hau da:

a) Izandako arazoak zirela eta, lana egiten luzaro jardun zuten.

b) Beren lana oso estimatzen zuten gauza asko gertatu zitzaizkielako.

c) Gertatu zirenak gertatu zirela, ez zitzaien asko kosta lana egitea eta horregatik pozik zeuden.

d) Gertatutakoak gorabehera, aintzat hartu zuten egindako lana, urte askoko jardunaren ondorioa baitzen.

**4. Ikasleek nabarmendu dute Ikastegi Nagusien euskararekiko jarrera eragozpen dela EHUren euskalduntzean urratsak egiteko.**

a) EHUren euskalduntzea azpimarratu dute ikasleek, Ikastegi Nagusiak ados egon ez arren.

b) Ikasleen arabera, EHUren euskalduntzea oztopatzen dute Ikastegi Nagusiek.

c) EHUren galgak Ikastegi Nagusiaren euskararekiko jarrera eragozten du, ikasleen ustez.

d) Ikasleak ez bezala, Ikastegi Nagusiak eta EHU prest daude euskarari galga jartzeko.

**5. Ostiral lainotsu hartan ere, bidegurutzean agurtu zuten elkar iluntzera arte.** Hau da:

a) Ostiralero bezala, han izan ziren banandu ezinik iluntzera arte.

b) Iluntzera arteko lainoa zegoen ostiral hartan bidegurutzean.

c) Elkar agurtu eta noraezean aurkitu ziren bidegurutzean iluntzera arte.

d) Bidegurutzean banandu ziren gauean berriro elkar ikustekotan.

**6. Erantzukizun penalak gizabanakoei egotzi behar zaizkie eta ez erakundeei.** Bestela esanda:

a) Erakundeei ezin zaie zigor-erantzukizunik leporatu, norbanakoei baizik.

b) Erantzukizun penalak erakundeei nahiz gizabanakoei ezar dakizkieke.

c) Zigorren erantzukizuna erakundeei baino ez dagokie.

d) Erantzukizun penalak gizabanakoek ezarri behar dituzte eta ez erakundeek.

**7. Beroaldi eta haserre giroan baino ikusi ez zutenek nekez sinetsiko dute biziki umore handiko gizasemea zela.** Bestela esanda:
a) Haserre antzean ezagutu zutenek sinetsiko dute gizon handia zela.
b) Haserrealdietan bakarrik ikusi zutenek ez dute erraz sinetsiko umore handikoa zela.
c) Umore handikoa zela diote haserre eta beroaldi giroan ikusi zutenek.
d) Sinesmen handiko gizona izan zela inork gutxik aitortuko du.

**8. Bere mundualdia berrogeita hemezortzi urtez luzatu zen, eta laurogeita hamar urte bete ditu aurten bere heriotzaldiak.** Beste era batera esanda:
a) Bidaiatzen 58 urte eman zituen eta 90 urtez hil zen.
b) 58 urtez ibili zen etxetik kanpo eta aurten hil da 90 urte zituela.
c) 58 urtez bizi izan zen, eta hil zenetik 90 urte bete dira aurten.
d) Beste 58 urtez bizi izan zen munduan, eta 90 urte izango lituzke orain.

**9. Hizkuntza gaelikoaren berpizte prozesuan gurasoen ausardia eta presioa funtsezko gertatu dira.** Beste era batera esanda:
a) Gaelikoaren aldeko prozesuan gurasoen ausardia eta presioa hutsaren hurrengo izan dira.
b) Gurasoen ekimena eta presioa funts gutxikoak izan dira gaelikoa berpizteko orduan.
c) Gurasoen ahalegin eta presioa funtsean geratu dira gaelikoa berpizteko bidean.
d) Gurasoen kemena eta presioa garrantzi handikoak izan dira gaelikoa berpizteko bidean.

**10. Bilboko Guggenheimek iragarritako aurreikuspenak errotik aldarazi ditu New Yorken jazotakoak.**
a) New Yorkeko gertakariek Bilboko museoan ere eragina izan dute.
b) Bilboko museoak aurreikusi zuen AEBetan gertatu zen aldaketa.
c) AEBetan gertatu zenak aurreikusten du Guggenheimen aldaketak izango direla.
d) Errotiko aldaketa haiek egitasmo berriak ekarri dituzte AEBetara nahiz Bilboko Guggenheimera.

**11. Alderdikideen arteko tirabirek sortutako ulermenarazoek eragin dute idazkariak negoziazio guztiak bere gain hartu izana.** Hots:
a) Alderdikideen arteko tirabirak direla eta, idazkariari gainera erori zaizkio arazoak.
b) Alderdikideen arteko konponezinak direla eta, negoziazioak idazkariaren esku geratu dira.
c) Negoziazio gogorrak dira eta horregatik hainbat arazo eta tirabira sortu da idazkariarekin.
d) Alderdikideek eragin dute idazkariak negoziazioetan arazoak eta tirabirak izatea.

**12. Harik eta lehiaketaren mamua uxatu arte bertsolari hark ez zuen berea eman.** Bestela esanda:
a) Lehiaketaren kezka saihestea lortu arte ez zuen eman zezakeen guztia eman.
b) Lehiaketaren mamua baztertu arte besteena baino ez zuen eman.
c) Norgehiagoka hartan, mamuak mamu, ahal zuen guztia eman zuen.
d) Lehiaketaren mamua erabat urrundu arte ondo baino hobeto aritu zen.

ERANZUNAK:

1A2C3D4B5D6A7B8C9D10A11B12A